Oier Guillanek idatzia,
Inaxito Albisuri egindako elkarrizketetan oinarritua.

Atzezlan hau irratirako bertsioan grabatu zen 2009. urteko ekainean Herri Irratian, aktore hauekin:

Peru-Txiki: Inazio Albisu
Jon Arregi: Javi Barandiaran
Ixabel: Miren Alkala
Cleo: Ainara Gurrutxaga
Magda: Amaia Corral
Martin/Don Arboreo: Urko Redondo
Svens: Oier Guillan



Muntaia Ander Fernandezek egin zuen.

Horrez gain, testu hau hainbat esperimentazio lan egiteko erabili da "Testu piztu" ekimenean, Labea laborategian eta Piezak ekimenaren emanaldietan.




"Munduko jakintsurik tontoena" testua Batbada proiektuaren barruan aurkeztu zen, Eztena teatro egunen barruan eginiko emanaldiarekin.



Liburuaren ale bakarra Maria de Bernardorena da.




Esker mila guztiei bihotz-bihotzez prozesu honetan, sorturiko uneetan, parte hartzeagatik.
Esker mila Inaxitori, bere bizitzagatik, irakatsitako guztiagatik, eroak garela oroitzeko manualagatik…



Gora bekatua! Gora munduko triste alaiak!

Testu hau idazteko egileak Eusko Jaurlaritzaren Kultura sailaren laguntza jaso zuen.

*(PERU-TXIKI ikusten dugu eserita, bastoia eskuetan, bekainen azpitik publikoari so. Boligrafo piloa du poltsikoan, mahai bat alboan. Publikoari luzez begiratzen egon ondoren mahai gainean dagoen txartel bati erreparatzen dio. Alderantziz dago. Buelta ematen dio, publikoak irakurtzeko moduan jarriz: "Munduko jakintsurik tontoena" irakurri daiteke bertan. Lehengo jarrerara itzultzen da.*
*JON agertzen da. Argazki kamera eta grabagailua berrikusten ditu, ea ondo dauden. PERU-TXIKIrengana doa. PERU-TXIKI lehengo jarrera berean dago berriz, bekainen azpitik publikoari finko begira).*

JON.- Kaixo.

*(Isilunea).*

JON.- Jon Arregi naiz, Zaharrak berri egunkarikoa.

*(Isilunea).*

JON.- Egunkarikoa... Zaharrak berri... Arregi... Jon.

*(Isilunea).*

PERU-TXIKI.- *(Mantso, apal hitz egiten du)*. Ni Peru-Txiki Santxoenea naiz.
JON.- Bai, hori da. *(Grabagailua prestatzen hasten da).*
PERU TXIKI.- Zu... kazetaria zara?
JON.- Bai.
PERU-TXIKI.- A... oso ondo... oso ondo...

*(Isilunea).*

JON.- Beno ba hasteko, galdera motz batzuk prestatu ditut. Ni neu kokatze aldera. Hauen ostean helduko diogu sakonean gaiari. Ondo baderitzozu.
PERU-TXIKI.- Bai... bai... noski...
JON.- Prest zaude?

*(PERU-TXIKIk baiezko buru keinua egiten du. JONEK grabagailua jartzen du martxan).*

JON.- Izena?
PERU-TXIKI.- Peru-Txiki.
JON.- Adina?
PERU-TXIKI.- Laurogeita hiru, nire gorputzaren arabera.
JON.- Adin psikologikoa?
PERU-TXIKI.- Hamazazpi.

*(Geldiunea. JON pentsakor gelditzen da).*

JON.- Kolorea?
PERU-TXIKI.- Erdi betea.
JON.- Helbidea?
PERU-TXIKI.- Virgo.
JON.- Lanbidea?
PERU-TXIKI.- Mozkorra. Munduko jakintsurik tontoena ordu libreetan.
JON.- Hara, bai bitxia… *(Apunteak hartzen ditu)*. Ea, gizarteko tristeak laguntzeko "Urrezko zubia" taldea sortu berri duzula jakin ahal izan dugu.
PERU-TXIKI.- Bai.
JON.- Ondo da. Mozkorra, prostituta, eroa, alkoholikoa, haurra... hitzak esaten badizkizut, zer datorkizu burura?
PERU-TXIKI.- Azkura.

*(Geldiunea. Labur-labur buruan hatz egiten du).*

JON.- *(Harrituta, baina normaltasuna adierazi nahian)*. Munduko jakintsurik tontoena zarela esan duzu. Nola eragiten du globalizazioak zure eguneroko lanean?
PERU-TXIKI.- Oso ondo.

*(Geldiunea. JONen zalantza).*

JON.- Zer esan nahi duzu horrekin?

PERU-TXIKI.- Tontotasuna globalizatu nahi dut. Orain, hemen. Gaur egun maitatzea tontoena delako, dirua arrazoirik gabe oparitzea tontoena delako, eroak entzutea tontoena delako. *(Geldiunea).* Itxaropena globalizatu nahi dut, bizi grina globalizatu nahi dut. Eromena globalizatu nahi dut. Orain, hemen. Baina batez ere, besteari entzutea globalizatu nahi dut.
JON.- Ulertzen dut.
PERU-TXIKI.- Ez. *(Begiratzen dio).* Zuk ez duzu ostiarik ulertzen. Orain nik egingo dizut galdera bat.
JON.- Ados.
PERU-TXIKI.- Gaur goizean dromedario bat ikusi duzu komuneko ispiluan?
JON.- Zertara dator hori?

*(PERU-TXIKI erantzunaren zain dago).*

JON.- Ez.
PERU-TXIKI.- Ba kezkatu behar zenuke, izan ere gaur goizean dromedarioak ZU! ikusi baitzaitu komuneko ispiluan.

*(PERU-TXIKI algaraka hasten da, ozenki, maltzurki. JONek ez daki zer esan).*

JON.- Tira ba, hel diezaiogun elkarrizketari. Egia esan, ez dakit gauza askorik. Azalduko didazu zehatzago zer den "Urrezko zubia" taldea?
PERU-TXIKI.- Ez.

*(Isilunea).*

JON.- Nola... "ez"?
PERU-TXIKI.- Istorio luzea da, eta ZUK! ez duzu denborarik.
JON.- Bai, bai, denbora dut, lasai. Horretara etorri naiz. Hori da nire lana.
PERU.TXIKI.- Zein da zure lana?
JON.- Kazetaria naiz.
PERU-TXIKI.- Eta zer egiten dute ba kazetariek?
JON.- Galdetu.

PERU.TXIKI.- A. Ni entzuten zutelakoan nengoen.
JON.- Hori da, bai, entzutera etorri naiz.
PERU-TXIKI.- Kontatuko dizut orduan.
JON.- Aurrera.

*(PERU-TXIKI altxatu eta "aurrera" joaten da. JONen harridura).*

JON.- Barkatu baina... nora zoaz?
PERU-TXIKI.- Aurrera esan duzu.
JON.- Tira, aurrera esan dudanean, zera esan nahi nuen...
PERU-TXIKI.- O. *(Atzera joaten da pauso batzuk. Besoak zabalik eta goian).* NI NAIZ URREZKO ZUBIKO GURUA, MUNDUKO JAKINTSURIK TONTOENA!!!
JON.- *(Idazten hasten da).* Zer da zehazki "Urrezko Zubia" taldean egiten duzuena?
PERU-TXIKI.- Ez dakit.
JON.- Nola ez dakizula?
PERU-TXIKI.- Inprobisatu egiten dugu.

*(Isilunea).*

JON.- *(Etsitzen hasita).* Ondo da... ondo da... nortzuk osatzen duzue "Urrezko Zubia" taldea?
PERU-TXIKI.- Nortzuk?
JON.- Bai, nortzuk.
PERU-TXIKI.- Nik.
JON.- Zuk eta?
PERU-TXIKI.- Nik eta nire ni guztiok. Nortasun asko ditut.
JON.- A.
PERU-TXIKI.- Aurkeztuko dizkizut?
JON.- Ez, ez, oraingoz ez. Esaidazu, Santxoenea jauna...
PERU-TXIKI.- Peru-Txiki kazetarientzat.
JON.- Ondo da Peru-Txiki... Peru-Txiki... kazetarientzat esan duzu? Eta lagunentzat?

PERU-TXIKI.- Lagunentzat monamugg, edo tio bueno... baina zu ez zara nire laguna. Nahi duzu nire laguna izan? *(Mingaina ateratzen dio pixka bat, sentsualki).*
JON.- *(Ezeroso).* Ez, lasai, ondo da. Peru-Txiki, hortaz. Zergatik zara munduko jakintsurik tontoena?
PERU-TXIKI.- Zergatik? *(Pentsakor gelditzen da).* Ez dakit.
JON.- Mmmm.... zertarako zara munduko jakintsurik tontoena?
PERU-TXIKI.- Kaptazioa egiteko. Gizarteko baztertuen, tristeen bila nabil! Haiei laguntzeko, lehenik eta behin jakin behar dut nortzuk diren.
JON.- Eta nola egiten duzu hori?

*(Isilunea).*

PERU-TXIKI.- Hori?
JON.- Hori.
PERU-TXIKI.- Hori... zer?
JON.- Hori... hori?
PERU-TXIKI.- Ou... hori...

*(Pentsakor gelditzen da. Isilune oso luzea).*

PERU-TXIKI.- Baduzu denborarik entzuteko?
JON.- Bai... bai... noski.
PERU-TXIKI.- Ondo da. Lan egiteko orduan, hiru lege ditut.
JON.- Hiru lege... *(Idazten du)* Zeintzuk dira lege horiek?
PERU-TXIKI.- *(Altxatzen da berriz).* Gora bekatua, gora bekatua eta GORA BEKATUA!!! *(Geldiunea).* Ostia!

*(Isilunea. PERU-TXIKI bastoiarekin pausatu eta bekainen azpitik begiratzen du publikoa. Irribarre ironiko batekin jarraitzen du hitz egiten).*

Astelehena zen. Edo urtarrila, zer axola.
Kontua da igande hartan asperturik nengoela, eta taberna batean eseri nintzela. Zain.
Asperturik nengoela esan dut. Heriotza itxaroteaz... aspertuta!

Heriotzak itxaron nazala! Esan nion neure buruari.
Eroen artera joango naiz! Erabaki nuen, eroen artean eromena normala delako.
Laurogeita lau urte izateari utzi nion! Orainean bizi denak ez du adinik!
*(Isilunea)*. Ze gezur politak, e? *(Barre algara maltzurra)*.
JON.- Bai… bai…
PERU-TXIKI.- Zoragarria da gezurtia izatea!
Kontua da asteazkena zela. Edo maiatza, zer axola.
Kontua da larunbata hartan aspertuta nengoela, eta taberna batean eseri nintzela. Zain.
Txartel bat jarri nuen mahaiaren gainean: "Munduko jakintsurik tontoena".
Eta segituan, egunero-orduro-minuturo jendea agertzen hasi zen, aholku eske.
Prostitutak. Paperik gabeko etorkinak. Alkoholikoak. Toxikomanoak. Gaixo psikikoak. Babes ofizialeko etxebizitzekin espekulatzen duten ezkertiarrak. Eta ni. Munduko jakintsurik tontoena.
Beraiek oparitzen didaten denborari esker naiz gero eta gazteagoa.
Eta hoberena da nire aholku guztiak gezur hutsa direla.
Gora bekatua!
Beraiek nahi duten gauza bakarra norbaitek entzutea da.
Eta orain halaxe nabil. Herriz herri, hiriz hiri, munduz mundu.
Taberna bat topatu eta mahai batean alboan eseri ohi naiz. "Munduko jakintsurik tontoena" txartela jartzen dut. Eta zain egoten naiz.

*(Isilunea. Bastoia uzten du mantso-mantso, beroki handia eranzten du pixkanaka. Jendeari begira gelditzen zaio serio, bekainen azpitik. Buelta ematen du apurka. Bizkarrean "Munduko jakintsurik tontoena TOUR" darama idatzita letra larriz)*.

JON.- Oso ondo. Nondik datorkizu besteei laguntzeko joera hori?
PERU-TXIKI.- Gauza bat argitu behar dizut, gazte. *(Geldiunea)*. Ni ez naiz futbol zalea.
JON.- A. *(Geldiunea)*. Eta zer.
PERU-TXIKI.- Zu... futbol zalea zara?
JON.- Ba egia esan, bai. Hori txarra da?

PERU-TXIKI.- O ez, ez, droga guztiak dira onak. Ni alkoholikoa nintzen. Baina utzi egin behar izan nuen, suntsitzen ari ninduelako. Beste droga batzuk bilatu ditut.
JON.- Adibidez?
PERU-TXIKI.- Adibidez lapurtzea. Boligrafoak lapurtzea dut bereziki gogoko.
JON.- Gehiago?
PERU-TXIKI.- Adibidez... gezurrak esatea.
JON.- *(Kezkatuta)*. Niri ez didazu ba gezurrik esango, ezta?
PERU-TXIKI.- Noski esango dizudala! *(Barre algara ozena eta maltzurra)*.
JON.- Baina ni... kazetaria naiz!
PERU.TXIKI.- Nik ere kazetaria izan nahi nuke... gezurti profesionala! Hori mauka hori! *(Geldiunea, jarraian oso serio bekainen azpitik)*. Ondo kobratzen duzu?
JON.- Bai... diot... ez. Kontratu militante bat daukat. Bueltatuko didazu nire boligrafoa…
PERU-TXIKI.- Hara.
JON.- Bale, baduzu drogazaletasun gehiago?
PERU-TXIKI.- Bai, noski.
JON.- Zeintzuk?
PERU-TXIKI.- Ba, adibidez... etorkinei euskara irakastea.
JON.- Hori! Hori da interesgarria! Eta bide batez, hasierako haria berreskuratuta, nondik datorkizu besteei laguntzeko joera hori?
PERU-TXIKI.- Hara... baduzu denborarik entzuteko?
JON.- Bai, noski.

*(PERU-TXIKI eseri egiten da)*.

PERU-TXIKI.- 1950. urtea izango zen... Hernaniko festak, sanjoanak. Bost egun eman nituen han, zeharo mozkortuta.
JON.- Bost egun jarraian.
PERU-TXIKI.- Jarraian. Bosgarrenean nire edateko gaitasuna ahitu egin zen, eta etxera itzultzea erabaki nuen. Dardarka hartu nuen trena, zer esango ote zidaten etxean?

*(IXIAR ateratzen da. PERU-TXIKIk ikusten du).*

PERU-TXIKI.- Ixiar! Zer egiten duzu zuk hemen!
IXIAR.- Baina zer arraio da hau?
JON.- Nor da hori?
PERU-TXIKI.- Ixiar, nire arreba.
JON.- Hara, urte askoan.
IXIAR.- Kaixo.
PERU-TXIKI.- Hilik dago.
JON.- Zer? Benetakoa dirudi ba.
PERU-TXIKI.- Bai, oso oroitzapen biziak ditut nik. Ixiar, egon zaitez pixka batean, zure txanda ez da oraindik iritsi.

*(IXIAR joaten da).*

PERU-TXIKI.- Zer ari nintzen esaten?
JON.- Bost egunez mozkortu ondoren etxerako bidea hartu zenuela.
PERU-TXIKI.- Bai, hori da.
JON.- Orduan erabaki zenuen etorkinei euskara irakatsi behar zeniela?
PERU-TXIKI.- Pazientzia pixka bat, gazte! Are gehiago… *(Aurpegia gerturatzen dio)* PAZIENTZIA! PIXKA! BAT! Hasi besterik ez naiz egin.
JON.- Ondo da, ondo da…

*(Isilunea. Hemendik aurrera PERU-TXIKIk tarteka hitz egingo die JONi eta bere oroitzapenei).*

JON.- Eta...?
PERU-TXIKI.- Gurasoekin eta arreba zaharrarekin, Ixiarrekin, bizi nintzen. Errenteriako tren geltokira iritsi nintzenean Hernanitik, etxekoek esango zidatena aurreikusi nezakeen... *(Ahapeka)*. Ixiar, orain da zure txanda…

IXIAR.- *(Ahapeka)*. A, bale… *(Ozen)*. Baina, zer arraio da hau? Zeharo erotuta zaude ala? Aitak bost egunez itxoin zaitu okindegian, lanaz gainezka egon da...!

PERU-TXIKI.- Mozkorra eta okina, ez ziren batera egiteko moduko lanbideak. Ordutegiengatik, batez ere.
JON.- Eta zer egin zenuen?
PERU-TXIKI.- Zerura begiratu.
JON.- Fededuna zinen, hortaz?
PERU-TXIKI.- Bai zera! Hirugarren gerra mundialaren arrastoak bilatzen nituen! Zerbait fuertea esan behar nuen nire arazoa ezkutatzeko. Zain egon nintzen, baina ez nuen ikusten bonbardaketarik, han ez zegoen abioirik. Etxera gerturatu eta orduan ikusi nuen Ixiar, aurpegi horrekin, nire zain. Nire etxean oso burgesak ziren, aurreiritziz beteak, erlijioak eta moralak pisu handia zuten... Ixiar ikusi orduko jakin nuen zerbait eskandalosoa esan behar nuela, ahalik eta izugarriena. *(IXIARri)* Ixiar, manikomio baten beharrean nago.
IXIAR.- Benetan…?

PERU-TXIKI.- *(JONi)* Horixe esan nion, ezustearekin konortea galduko zuela pentsatuz...

IXIAR.- Hau poza! Gure errezoek zerbaiterako balio izan dute. Ama! Peru-Txikik laguntza eskatu du! Jaungoikoak aittu gaitu eta guri laguntzeko asmotan da! *(Telefonora gerturatzen da)*. Hospital de El Cuervo Cojo de Madrid? Con el doctor Javier Svens por favor. Sí, soy la hermana de Peru-Txiki. Sí, sí, lo acaba de decir...

JON.- Eta konturatzerako eroetxean zinen.
PERU-TXIKI.- Bai, segituan sartu ninduten eroetxe hartan. Zu egon zara inoiz ingresatua eroetxe batean?
JON.- Ni?
PERU-TXIKI.- Bai.
JON.- Ez.
PERU-TXIKI.- Orduan nola dakizu osasuntsu zaudela?
JON.- Barkatu?
PERU-TXIKI.- Eroei esker! Mozkorrei esker! Eskizofrenikoei esker jakin ahal izan dut nik eroetxetan ez dagoen jendea zeinen eroa dagoen!
JON.- A bai? Diot, ez al da ba kontrakoa?

PERU-TXIKI.- Gizakia gaixo dago berez, eta kazetaria zer esanik ez.
JON.- Tira, eskerrik asko.
PERU-TXIKI.- Ez horregatik.

*(Ezustean DON ARBOREO sartzen da).*

DON ARBOREO.- Pasen! Pasen! Pasen ustedes por la alfombra humana! Yo soy la alfombra humana del Hospital El Cuervo Cojo!

*(DON ARBOREO lurrera etzaten da. IXIAR beldurtuta gelditzen da albo batean. PERU-TXIKIk pozik eta gogoz zapaltzen du DON ARBOREO).*

PERU-TXIKI.- Etorri! Etorri!
JON.- Baina... nor da hori?
PERU-TXIKI.- Don Arboreo! Ospitalera ongi etorria egin zigun gaixoak. Alfonbra bat zela pentsatzen zuen, ongi etorri jartzen zuen horietako bat. Zapaldu, zapaldu! Goazen bere gainetik!
DON ARBOREO.- Augg…

*(JONek hasieran beldurrez baina azkenean pasatzea erabakitzen du. Gustatu egiten zaio).*

JON.- Joan beharko gara ba…
DON ARBOREO.- Augg…
JON.- *(Bere golkorako)*. Hau da hau, biguna da gero…
DON ARBOREO.- Augg…
PERU-TXIKI.- Gustatu egin zaizu ezta?
JON.- Bai, diot ez, ez dakit. Egia esan pixkat fuertea da.
PERU-TXIKI.- Nola ez da izango ba! Gutxienez laurogeita hamar kilo pisatzen dituzu eta...
JON.- Ez, zera, fuertea dela pertsona batek horrela bukatzea.
PERU-TXIKI.- Bizitza guztian zehar zapaldu zuten Don Arboreo gizajoa. Gurasoek, irakasleek, apaizek, falangistek, guardia zibilek... azkenean alfonbra bat zela sinistu zuen. Bere gainetik pasatzea gustatu zaizula esan duzu?

*(JON isilik gelditzen da, apur bat damututa).*

PERU-TXIKI.- Goazen!
JON.- Nora?
PERU-TXIKI.- Barrura.

*(MOZKOR bat agertzen da, txinatarrez jantzita).*

MOZKORRA.- Lelotuta lilia, lili… put! Lili… put! Lilalon, lilalon…
PERU-TXIKI.- Hara, nire antza du horrek.
JON.- Zu txinatarra zara ala?
PERU-TXIKI.- Ez! Baina… *(Pentsakor gelditzen da une batez MOZKORRAri begira)* Hori ni naiz eta!
JON.- Hori zu zara?
PERU-TXIKI.- Hori da, horia, txinatarra, hori naiz ni.
JON.- Hori?
PERU-TXIKI.- Hori horia.
JON.- Baina… hori zarela uste duzu ala?
PERU-TXIKI.- Ala? Ez, Ala jainko bat da. Ni mozkorra besterik ez naiz, beno, garai hartan jainko mozkorra. Hara, oraintxe konturatu naiz, ez ote dira jainko guztiak mozkorrak? Mundua nola dagoen ikusi besterik ez dago...
MOZKORRA.- Lelotuta lilia, lili… put! Lili… put! Lilalon, lilalon…
JON.- Baina hori zu bazara, zu izan zinena, zergatik hitz egiten duzu txinatarrez?
PERU-TXIKI.- Tira, hitz egin, hitz egin esaten dena…
MOZKORRA.- Lelotuta lilia, lili… put! Lili… put! Lilalon, lilalon…
PERU-TXIKI.- Ez dakit, nire irudimenak gauza arraroak egiten ditu garai hura oroitzen duenean... o, bai, oroitzen dut! (Barre algaraka hasten da). Horia nengoen garai hartan.
JON.- Horia?
PERU-TXIKI.- Horia.
JON.- Nola da posible?
PERU-TXIKI.- Zirrosia neukan.

*(SVENS doktorea sartzen da).*

MOZKORRA.- *("Txinatarrak" imitatzen)* Buenos dias doktol Svens.
SVENS.- Te parecerá gracioso. ¿Verdad, Peru-Txiki? Estás muy enfermo, tienes el hígado tocado. Vas a pasar una larga temporada aquí.

*(EMAKUME ELEGANTEA sartzen da. Hemendik aurrera PERU-TXIKIk hitz egiten duen bitartean EMAKUME ELEGANTEA MOZKORRArengana gerturatzen doa, arropa apur bat eranzten, eta bere gainean jartzen da ziurtasunez, publikoari bizkarra emanez. JONek PERU-TXIKIk dioen guztia jasotzen du baina haiei begia gainetik kendu ezinik).*

PERU-TXIKI.- Vas a pasar una larga temporada aquí… hori entzutea bai zela erotzeko modukoa. Baina bestela Svens hori tipo jatorra zen. Asko ikasi nuen berarekin. El Cuervo Cojo eroetxean pasa nuen denboraldian lagunak egin ginen, eta hura utzi nuenean niretzat oso garrantzitsua zen gauza bat esan zidan, edateari uzteko gakoa izango zena:

SVENS.- Zu ezin zara lasai egon, Peru-Txiki, ez zara lasai egoteko jaio. Zure herriko rollo guztietan sartu behar zara, aktibitatea behar duzu, zerbait egiteko eduki beti. Alkohola desagertzeko erabiltzen da, zure burua ahazteko, eta hori ekidin behar duzu.

JON.- Euskaraz zekien Svens doktoreak?
PERU-TXIKI.- Ez, baina nire oroitzapen asko euskarara pasa ditut.

PERU-TXIKI ETA MOZKORRA BATERA.- *(SVENSi)*. Baina zer arraio egingo dut nik ba kalean.
SVENS.- Askotan entzun dizut hitz egiten zure herriari buruz, zure kulturari buruz. Zure familia euskalduna zela esan zenidan behin, txikitan euskaraz hitz egin arren hizkuntza galdu egin zenuela. Hor baduzu erronka bat, ikas ezazu euskara, berreskura ezazu zure nortasuna, eta gero ikusiko duzu zer egin.

JON.- *(Zeharka besteei begiratuz)*. Frankismoaren garaian gertatua izateko oso iraultzailea dirudi ideia horrek.
PERU-TXIKI.- Frankismo garaian, eta Madrilen! Iraultzailea zen bai!

*(EMAKUME ELEGANTEA orroka hasten da, eta baita PERU-TXIKI ere MOZKORRAren ordez, publikoari begira).*

JON.- Baina... zer da hau? Nor da emakume hori? Zer ari zaizu egiten?
PERU-TXIKI.- Niri ezer ez, beste batzuei egiten zien. Nire irudimenaren proiekzioa da. Nik kanpaia jotzen nuen haiek egiten zutena ikusi eta gero.

*(JONek begira jarraitzen du, PERU-TXIKI eta EMAKUME ELEGANTEA orroka).*

JON.- Emakume aberatsa dirudi...
PERU-TXIKI.- Hala zen, bai. Zoragarria zen eroetxe hura! Zoragarriak eta zorogarriak dira zoroen gauzak! eta esan dizudan bezala, berez askoz okerrago zeuden kanpokoak, barrukoak baino.
JON.- Ezin duzu hori baieztatu.
PERU-TXIKI.- Ez! Baina jarriko duzu erreportajean, ezta?
JON.- Jendeari ez zaio gustatuko.
PERU-TXIKI.- Zergatik ez?
JON.- Ezin diozu jende guztiari aurpegira esan eroa dagoela!
PERU-TXIKI.- Baina egia da.
JON.- Zure egia da.
PERU-TXIKI.- Egia beti egi, egiari beti diogu beldurra. Egia hau gezurra dela esango banu orain, gezurra esango nuke.

*(Intzirika, orgasmoka hasten da berriz ere, MOZKORRAren gainean dagoen EMAKUME ELEGANTEarekin batera).*

JON.- Baina nor arraio da hori?
PERU-TXIKI.- Zuk esan duzu lehen. Emakume aberats bat. Pertsonaia interesgarria, jota zegoen benetan... eroetxera joaten zen mozkorrekin larrua jotzera. Diru asko zuen, eta horrela ospitalera zetorrenean lortzen

zuen ateak irekitzea eta ahoak ixtea. Ez dakit nola ez zuten bera ere barruan sartu.
JON.- Baina... gaixoek ez zuten ezer esaten?
PERU-TXIKI.- Mozkortu egiten zituen lehenago. Ez zen zaila, eta gero nork sinistuko dio mozkor ero bati?
JON.- Gauza fuerteegiak dira hauek erreportaje baterako.
PERU-TXIKI.- Horixe da arazoa! Erreportajeetan agertzen direlako dira gezurrak egia! Eta egiak gezur! Ezkutatuko duzu egia?
JON.- Batzuetan gauzak ez esatea ez da ezkutatzea, ez esatea baizik, eta kito.
PERU-TXIKI.- *(Intzirika hasten da berriz)*. Bai noski!!! Begiak ixtea eta ez ikustea ez da beti gauza bera!! Ezta Svens?

*(SVENS eta PERU-TXIKI elkarrekin hasten dira oinez).*

SVENS.- Ai, Peru-Txiki, Pigmeo sentitzen dut neure burua. Gizakiak baditu ezagutzen ez ditugun tolesdurak, ñabardurak, txoko, bazter eta aldakiak... gaixo psikikoen egoera diferentea da, beste herri bat da, zoroen herria. Zuk ezagutu dituzu hor zehar herriak ezta? Ba zoroena beste bat gehiago da.

*(Desagertzen dira. JON bakarrik gelditzen da, idazten. Bien artean beste MANTALDUN bat sartzen da, hirurogei urte inguruko HILDAKO bat darama mahai baten gainean. Lasai-lasai eta patxadaz, maindirea kentzen dio HILDAKOARI gainetik, prakak jaitsi eta HILDAKOA bortxatzen hasten da. JONek pixkanaka idazteari uzten dio, zur eta lur. SVENS ateratzen da berriz ere eta publikoari begira hitz egiten du).*

SVENS.- Pigmeo sentitzen dut neure burua. Gizakiak baditu ezagutzen ez ditugun tolesdurak, ñabardurak, txoko, bazter eta aldakiak... gaixo psikikoen egoera diferentea da, beste herri bat da, zoroen herria. Zuk ezagutu dituzu hor zehar herriak ezta? Ba zoroena beste bat gehiago da.

*(SVENS joaten da, PERU-TXIKI sartzearekin batera. Mantso-mantso gerturatzen da JONengana. Honek eszena zur eta lur jarraitzen du).*

JON.- Ezin dut sinistu.
PERU-TXIKI.- Svensek kontatu zidan, bere begiekin zuen ikusia.
JON.- Baina... hildako bat da!
PERU-TXIKI.- Ez ikusi! itxi begiak! utzi eroari bere egiarekin, eroaren egia beti da gezurra! baina ero batzuk badakite eroak daudela. Itxi begiak ez ikusteko, itxi belarriak ez entzuteko... idatzi erreportajeak!!!
JON.- Kaka zaharra. Eroa zaude.
PERU-TXIKI.- Bai! Hala da! Azkenean ulertu duzu. *(Aurpegia gerturatzen dio. Isilunea).* Maitasunezko istorio bat entzun nahi duzu?
JON.- Ez dakit ba.
PERU-TXIKI.- Bai motel! Maitasuna zoragarria da!
JON.- Zoratzeko modukoa?
PERU-TXIKI.- Zoragarria! Maitasuna beharrezkoa da! Ez duzu uste?

*(JONek MANTALDUNA begiratzen du HILDAKOA berriz ere eramaten).*

JON.- Ez dakit.
PERU-TXIKI.- Zu ez zara inoiz maitemindu?
JON.- Bai, noizbait bai.
PERU-TXIKI.- Ni ere. Astero. *(Geldiunea).* Orain zurekin maitemintzen ari naiz.
JON.- ZER!!??

*(PERU-TXIKI algaraka hasten da).*

JON.- Hori ezinezkoa da.
PERU-TXIKI.- Zergatik? Ni bisexuala naiz, baina ez dut sekulan mutilik probatu. Hori erreportajean sar dezakezu, ez zait inporta.
JON.- Baina... ezin zara nirekin maitemindu.
PERU-TXIKI.- Zergatik ez?
JON.- Ba... kazetaria naizelako. Kazetariok ez dugu sexurik, neutroak gara, objektiboak.
PERU-TXIKI.- A, egia da. Kazetariak ez zarete batere maitagarriak. Maitasunezko istorio bat entzun nahi duzu?

JON.- *(Etsituta)*. Bai, bai, noski…
PERU-TXIKI.- Ni ezkonduta nago.
JON.- Nola du izena zure emazteak?
PERU-TXIKI.- Cleopatra. Cleo lagunentzat.
JON.- Cleo?
PERU-TXIKI.- Cleo.
JON.- Nola ezagutu zenuen?
PERU-TXIKI.- Zer?
JON.- Nola...?

*(Isilunea. PERU-TXIKI pentsakor gelditu da).*

JON.- Barkatu… nola ezagutu zenuen Cleo?
PERU-TXIKI.- Zer?
JON.- Nola...?
PERU-TXIKI.- A, bai.

*(Isilunea).*

PERU-TXIKI.- Jakin nahi duzu nola ezagutu nuen Cleo?
JON.- *(Etsitzen hasita)*. Bai, bai, noski.
PERU-TXIKI.- Eroetxetik itzuli eta segituan hasi nintzen berriro lanean... eta baita mozkortzen ere. Halako batean Cleo azaldu zen okindegian.

*(GAZTE bat sartzen da, aspertu aurpegiarekin).*

GAZTEA.- Atrezzo imajinarioa?
PERU-TXIKI.- Bai, hemen da.

*(GAZTEAk hamar ogi uzten ditu eskenatokiaren erdian. Ogiek aurpegia dute, eta irribarrez daude).*

JON.- Zer da hori?
PERU-TXIKI.- Cleo.
JON.- Hori da Cleo?
PERU-TXIKI.- Bai, nire irudimenaren metafora bat da. Okindegian ginen eta Cleo izugarri goxoa zen…
JON.- O.
PERU-TXIKI.- Bera ikusi eta segituan galdetu nion nire lankideari ea nongoa zen, eta berak azaldu zidan Cleo eta bere familia berriak zirela herrian, izatez Lesakakoak, baserritik baserrira aldatu zirela.
JON.- Beste herri batekoa…
PERU-TXIKI.- Hori da!

*(CLEO gaztea sartzen da eta ogiak hartzen ditu, PERU-TXIKIri begira).*

PERU-TXIKI.- Ez zen herrikoa! Niretzat oso interesantea zen hori jakitea, horrek esan nahi baitzuen ez ninduela ezagutzen… oraindik. *(CLEOri begira, mantso-mantso hitz egiten du).* Gustukoa dut…! Saiatuko naiz horrekin adixkidetzen…
JON.- Ausarta zinen hortaz!
PERU-TXIKI.- Bai zera!! Ni alkoholaren bultzadaz baliatuta gerturatzen nintzen soilik neskengana.
JON.- Cleo Lesakakoa zela esan duzu, euskalduna hortaz.
PERU-TXIKI.- Bai, nik oraindik ez nekien euskaraz, eta berak ez zekien gazteleraz.
JON.- Nola egin zenuten orduan elkar ezagutzeko?

*(CLEO eta MAGDA sartzen dira, txutxu-mutxuka, ahapeka hitz egiten).*

PERU-TXIKI.- Jai egun batean Zumardian ikusi nuen, igandeko dantzaldian. Bera beste lagun batekin zegoen, eta gerturatu egin nintzen... *(CLEOri, ahotsa gehiegi altxatuta).* YO SER DE AQUÍ, me llamo Peru-Txiki, PERU-TXIKI SANTXOENEA. ¡ACABO DE VENIR DE UN MANICOMIO Y QUIERO CAMBIAR DE VIDA! ¡¡QUIERO VIVIR CON UNA CHICA JOVEN!! ¡¡QUIERO VIVIR CONTIGO!!

JON.- Hori esan zenion?
PERU-TXIKI.- Bai… bai… noski… Berarekin larrua joko nuela ere esango nion, baina ordura arte horrek ez zidan oso ondo funtzionatu ligatzeko. Batez ere, esan bezala, mozkorrik esaten nuenean. Hau da, ia beti.
JON.- Eta... horrela esan zenion?
PERU-TXIKI.- Horrela... nola?
JON.- Horrela garrasika.
PERU-TXIKI.- Horrela... nola?
JON.- Horrela... HORRELA, garrasika.
PERU-TXIKI.- Bai, baina bera ez zen gorra. Gaur egun etorkinak ere ez dira gorrak, baina garrasika hitz egiten diegu.
JON.- Hizkuntza bat ez ezagutzeak ez du esan nahi gorra dagoenik inor.
PERU-TXIKI.- Oso ondo...! Ulertzen hasia zara! Agian ez zara hasieran uste nuen bezain inozoa...!
JON.- Zer? Baina, ni inozoa nintzela uste al...
PERU-TXIKI.- *(Moztu egiten dio)*. Bera ez zegoen gorra! Etorkinak ez daude gorrak! Gu gara hain ozen hitz eginda ezer entzun nahi ez dugunak...!
JON.- Bai... tira... eta orduan ulertu zenuen euskara ikasteak eta ondoren euskara irakasteak duen garrantzia, ezta?
PERU-TXIKI.- Ez.
JON.- Ez... *(Isilunea)*. Noiz orduan?
PERU-TXIKI.- Ez duzu pazientziarik!!!
JON.- Badut, badut...

MAGDA.- *(CLEOri)* Zer esan dizu horrek?
CLEO.- Ez dakit ondo ulertu diodan, baina nik uste dut esan didala nirekin bizi nahi duela.
MAGDA.- ZER??!! Horrelakorik ez e? Horrelakorik ez. Hori eroetxe batean egon da.
CLEO.- Bai, hori ere esan dit.
MAGDA.- Bere ama pozoitu egin zuen.
CLEO.- Hori ez dit esan.
MAGDA.- Eta aita hil egin zuen.

JON.- Ama eta aita hil? Egia al da hori?
PERU-TXIKI.- Bai zera! Mutur oker horrek "mató a sus padres a disgustos" edo horrelako zerbait entzungo zuen gazteleraz, eta gero badakizu radio makutok nola funtzionatzen duen...

CLEO.- Aitarena ere ez dit esan, baina bai eroetxearena. Zuk esaten dituzun gauzak entzunda ez du ematen pertsona bat. Hamalau baizik. Ziur zaude egia dela? Lehenago ere oso gauza gogorrak esan izan dizkidate beretaz, baina nik gustukoa dut...
MAGDA.- Tira, zuk ikusiko duzu zer egin nahi duzun. Nik asko jota hiru hilabeteko froga egingo nuke berarekin.

JON.- Eta egin egin zuen!
PERU-TXIKI.- Baikondu egin ginen.
JON.- Ezkondu?
PERU-TXIKI.- Ez. Baikondu. Ezdakitkondu. Erdipurdikondu. Eztei bidaia ere egin genuen!
JON.- Istorio polit bat azkenean.
PERU-TXIKI.- Bai zera! Bidaia izugarri tristea izan zen! Nik ez nuen ikusten neure burua libre, erantzukizunak zapaldu egiten ninduen, joder ezkonduta! Nik nahi nuen berarekin libre bizitzen hasi, baina bai zera! Ez zen posible izan, baikondu behar izan genuen. Garaia, badakizu. Bidaian lau edo bost mozkor fuerte harrapatu nituen.
JON.- Buelta berriro zulora.
PERU-TXIKI.- Erabat. Erabi. Erahiru. Erainfinitu!!! Bidaiatik itzuli eta handik gutxira lehen semea izan genuen.
JON.- Gero eta ardura gehiago ezta?
PERU-TXIKI.- Bai. Nire semeak zure antz handia dauka.
JON.- Benetan?
PERU-TXIKI.- Ez, gezurra da.
JON.- A. Orduan zergatik esan didazu...?
PERU-TXIKI.- Zutaz barre egiteko.
JON.- Eskerrik asko.
PERU-TXIKI.- Ez horregatik. *(Geldiunea)*. Hala ere baduzue zerbait komunean.

JON.- Komunean? Zer?
PERU-TXIKI.- Papera.
JON.- Papera dugu komunean?

*(PERU-TXIKI bere "metafora"rekin barrezka hasten da).*

PERU-TXIKI.- *(Oso serio bat batean).* Baita zerbait gehiago ere.
JON.- *(Zalantza egiten du, galdetu ala ez).* Zer?
PERU-TXIKI.- Zakila.
JON.- Bai, tira, hori mutil askorekin gertatzen zait, bai.
PERU-TXIKI.- Ez pentsa.
JON.- Nola ez pentsa.
PERU-TXIKI.- Nik zakila dut, baina alu bat naiz!
JON.- Ez dizut ulertzen, eta ez dakit ulertu nahi dizudan ere...
PERU-TXIKI.- Bisensuala naizela deskubritu dut.
JON.- Bisexuala zara?
PERU-TXIKI.- Bisensuala. Hirusensuala. Lausensuala. Milasensuala!
JON.- Argitaratu dezaket hori?
PERU-TXIKI.- Nire semearen sentsibilitatea zauritzen ez baduzu, bai.
JON.- Tira, hori nik ezin dut ziurtatu...
PERU-TXIKI.- Kazetariek ez duzue ezer ziurtatzen?
JON.- Noiz jakin duzu bisexuala zarela?

*(PERU-TXIKIk erlojua begiratzen du).*

PERU-TXIKI.- Atzo.
JON.- Atzo?
PERU-TXIKI.- Ez. Herenegun.
JON.- Herenegun orduan?
PERU-TXIKI.- Ez. Bihar.
JON.- Barkatu... bihar konturatu zara bisexuala zarela?
PERU-TXIKI.- Bai, oraindik ez nago prestatuta egia onartzeko.
JON.- Eta... zer sentitzen da laurogeita lau urterekin bisexuala zarela konturatuta?
PERU-TXIKI.- Zer sentitzen den? Kristo guztiarekin larrua jotzeko gogo bizia.

*(PERU-TXIKIk bekainekin keinua egiten dio gora-behera, sentsualki).*

JON.- Tira ba, axola ez badizu hel diezaiogun berriro gaiari. Oraindik ez dut argi nola arraio egingo dudan erreportaje hau.
PERU-TXIKI.- *(Keinu sentsuala)*. Guapo…
JON.- Oraindik ez dakit zergatik erabaki zenuen etorkinei euskara klaseak doan ematea.
PERU-TXIKI.- *(Keinu sentsuala)*. Guapo…
JON.- Oraindik ez dakit zer ari naizen kazetari izan nahian.
PERU-TXIKI.- *(Mingainarekin keinu sentsuala)*. Guapo…
JON.- Oraindik ez dakit nola ez naizen mozkortzen egunero lana eta gero.
PERU-TXIKI.- *(Hatza pasatzen ahotik)*. Guapo…
JON.- Nik ikerketa kazetaritza egin nahi nuen, gauza serioak aztertu, politikoak, Sarkozy eta Carla Bruniren arteko harremana adibidez...
PERU-TXIKI.- Nire maitalea izan nahi duzu?
JON.- Hori besterik ez zitzaidan falta suizidatzeko...
PERU-TXIKI.- *(Bastoiarekin jotzen dio buruan)*. Hori ezta txantxetan ere!
JON.- Ai! *(PERU-TXIKIren aldarte aldaketari erreparatuta)*. Zu suizidatu zara inoiz?
PERU-TXIKI.- Ni suizidatu naizen inoiz??? *(Geldiunea. Berriro jotzen dio bastoiarekin)*. Konturatzen zara ze galdera tontoak egiten dituzun?
JON.- Barkatu. Saiatu zara suizidatzen inoiz?
PERU-TXIKI.- Gogoa bai, izan nuen behin.
JON.- Noiz?
PERU-TXIKI.- Behin.
JON.- Noiz?
PERU-TXIKI.- Baikondu eta gero. Baikondu eta gutxira. Topora joatea erabaki nuen, nire buruaz beste egitera. Orduan topatu nuen Martin.
JON.- Nor da Martin?
PERU-TXIKI.- Herriko ezagun bat.

*(MARTIN sartu da pixkanaka).*

MARTIN.- Nora zoaz aurpegi horrekin?
PERU-TXIKI.- Trenera.

MARTIN.- Irunera edo Amarara?
PERU-TXIKI.- Trenera! Trenera noa! Trenbidera!
MARTIN.- Trenbidera... ez, ez, ez. Hil nahi baduzu hil egingo zara, baina nik emango dizudan ostiagatik. Mozkor halakoa…! Zer uste duzu zuk ba, zu zarela arazoak dituen bakarra? Leku guztietan daude zu bezalako zailtasunak dituzten pertsonak, barra-barra! Hara, zuk egin behar duzuna da beraiekin kontaktuan jarri, mozkor sakonekin... zuk ulertuko dituzu, eta beraiek ulertuko zaituzte. Eta ez duzu zure burua bakarrik ikusiko.

PERU-TXIKI.- Nik ez nuen oso ondo ulertu zertaz ari zen, baina neure burua trenbidera botatzeko grina gutxitzen joan zitzaidan.

MARTIN.- Begira, nik Errenteriako, Lezoko, Pasaiako, Hernaniko eta Donostiako mozkor sakonekin zerrenda bat egingo dut. Zuk egin beste bat, eta bihar elkartuko ditugu biak.
CLEO.- Egun hartan binaka igo zituen etxeko eskailerak, eta lehenbiziko aldiz irribarrea ikusi nuen bere aurpegian.

PERU-TXIKI.- Nik ez dut hori oroitzen, baina tira.

CLEO.- Zer gertatu zaizu?
PERU-TXIKI.- Martinekin egin dut topo.
CLEO.- Martin? Nor da Martin?

PERU-TXIKI.- *(JONi)*. Nik une horretan pentsatzen nuen kristo guztiak ezagutzen zuela Martin. *(CLEOri)*. Bihar ezagutuko duzu.

*(MARTINek izkina batetik)*.

MARTIN.- *(Ahapeka)*. Bihar da jada?
PERU-TXIKI.- *(Ahapeka ere)*. Bai, sartu, sartu.
MARTIN.- *(Ozen)*. Komunikazioa da behar duguna!
PERU-TXIKI.- Komunikazioa!
MARTIN.- Horixe baietz! Komunikazioa!
PERU-TXIKI.- Komunikazioa!

MARTIN.- Komunikazioa! Komunikazioa jarri behar da martxan!
CLEO.- Hara! Gizon hau ez al da ba komunista!
MARTIN.- Komunista! Komunikazioa! *(Ingurura begiratzen)*. Komuna?
CLEO.- Hortik.

*(MARTIN komunera joaten da).*

CLEO.- Peru-Txiki, Martin hau talde komunista batekoa dela esan zidan behin Magdak.
Paranoiko omen dabil orain urte batzuk atxilotu zutenetik, guardia zibilak ikusten omen ditu leku guztietan.
PERU-TXIKI.- Gaixorik dabil bera ere, hortaz. Orain ulertzen ditut gauza asko. Ziur aski horregatik du horrelako intuizioa baztertuekin, baztertu sozialekin, eta prest dago haien alde arriskatzeko, ohituta dagoelako bizitza aktiboa izaten, arriskuarekin bizitzen...

*(MARTIN komunetik paranoiko itzuli da, alboetara begiratzen).*

PERU-TXIKI.- ...ezta Martin?
MARTIN.- AAAA! Hau sustoa!
PERU-TXIKI.- Beno, noiz hasiko gara komunikazioa martxan jartzen?
MARTIN.- Ez, ez. Zuk egin behar duzu hori. Ni paranoikoa naiz, ez mozkorra. Nik ezin diot esan mozkor bati "guk, mozkorrok...". Normalena da ostia bat jasotzea beragatik. Zuk berriz, oso kurrikulum aberatsa daukazu horretan, eta ez da ezer pasako zuk esaten baduzu "guk, mozkorrok, hemendik aurrera ez dakit zer!".
PERU-TXIKI.- Ardura berriz ere! Gorroto dut ardura!
MARTIN.- Ea bion artean zenbat mozkor zenbatu ditugun...

*(Zerrendak begiratzen dituzte).*

PERU-TXIKI.- Berrehun eta hamar.
CLEO.- Berrehun eta hamar!
MARTIN.- *(Publikora begira)*. E! Ikusi duzu nola begiratu nauen horrek!
PERU-TXIKI.- Nork?

MARTIN.- Horrek!
CLEO.- Nik ez dut inor ikusten.
MARTIN.- Agg! Txakurrak kilometrora usain ditzaket!

JON.- Eta orduan Alkoholiko Anonimoak taldea sortu zenuten…!
PERU-TXIKI.- Bai, guk sortu genuen lehen taldea estatu mailan, Errenterian bertan.
JON.- Eta kide izaten jarraitzen duzu?
PERU-TXIKI.- Ez.
JON.- Ez? Zergatik?
PERU-TXIKI.- Sekta bat bilakatu da, sekta subentzionatu bat. Ahaztu egin ditu hasierako printzipioak, komunikazio zuzenarena, Martinek trenera nindoan hartan ondo erakutsi zidana.
JON.- Baina jendeak komunikazioaren beharra du oraindik ere, ezta?
PERU-TXIKI.- Bai, noski, inoiz baino gehiago. Baina ez bakarrik mozkorrok: eskizofrenikoek, depresiboek, drogarekin arazoak dituztenek, prostitutek eta prostitutoek... gizarteak baztertuak diren guztiek.
JON.- Eta horretarako sortu duzu orain Urrezko Zubia izeneko taldea.
PERU-TXIKI.- Horixe ba, azkenean ulertu duzu zerbait, txoriburu hori! Urrezko zubia: munduko jakintsurik tontoenaren habia!
JON.- Eta... azken galdera bat, axola ez badizu...
PERU-TXIKI.- Axola dit.
JON.- A.

*(Isilunea).*

PERU-TXIKI.- Egidazu, hala ere.
JON.- Zergatik erabaki zenuen etorkinei euskarazko klaseak doan ematea?
PERU-TXIKI.- Oraindik ez dakizu zergatik?
JON.- Ez didazu esan.
PERU-TXIKI.- Eta ez duzu asmatu?
JON.- Ez.
PERU-TXIKI.- Orduan arazo bat duzu.
JON.- Nik?
PERU-TXIKI.- Zuk. Hara, azken istorio bat kontatuko dizut, eta orduan dena ulertuko duzu.
JON.- Aurrera.

*(PERU-TXIKI mantso-mantso altxatu eta aurreraka joaten da).*

JON.- Peru-Txiki, barkatu baina aurrera esan dudanean...
PERU-TXIKI.- O! *(Itzultzen da).* Antzezlan bat egiteko gidoia idatzi dut:

*(GAZTEA sartzen da patata batekin).*

GAZTEA.- Atrezzo imajinarioa?
PERU-TXIKI.- Bai, hemen da.

*(GAZTEAk patata uzten du eskenatokiaren erdian, eta joaten da).*

JON.- Zer da hori?
PERU-TXIKI.- Ez duzu ikusten? Arratoi bat.
JON.- A.
PERU-TXIKI.- Hara, idatzi dudan antzezlanean ni etzanda nago eskenatokian, eta han, nire aurrean, patata bat dago.
JON.- Patata bat?
PERU-TXIKI.- Bai, patata bat, arratoia den patata bat.
Zera esaten diot: kaixo.
Eta berak erantzuten dit: "txita, zista, tira tira...!
Eta nik: e?
Arratoiak: ta, tat, ata, titi ti ta, tataratatxita!
Zer moduz egin duzu lo?
Txit, a aata, txita, txita, aata
Eta nik esaten diot. Kontxita!
Hori da!, erantzuten du berak, nire ama zen Kontxita.
Orduan zu zara, nik ezagutzen ez nuen anaia!
Muxu bat ematen diot eta deskubritzen dut ni baino mila urte zaharragoa dela, eta nire anaia dela. Hori izango da nire elkarrizketa arratoiarekin, patata batekin.
JON.- Pixka bat surrealista, ezta?
PERU-TXIKI.- Niri gustatzen zait hori. Ni eta errealitatea ez gara elkarrekin batere ondo moldatzen. Zu baino mila urte zaharragoa den anaia bat topatzea… jode! Ostegunero ez da hori gertatzen! Eta ezta arratoia izatea ere.

Berak hitz egiten du gainera. Nik esaten nion: nola demontre esaten duzu txoftxofi txista…, arratoia bazara eta hilda gainera?
JON.- Hilda zegoen arratoia?
PERU-TXIKI.- Bai, noski.
JON.- O. *(Idazten jarraitzen du).*
PERU-TXIKI.- Ulertu duzu esan nahi dudana?
JON.- Ez.
PERU-TXIKI.- Orduan arazo bat duzu.
JON.- Nik? Zergatik?
PERU-TXIKI.- Komunikazioa ez zaizulako iristen.
JON.- Eta nik dut arazoa? Barkatu, baina komunikazioa biren arteko gauza da…
PERU-TXIKI.- Hori bai kaka zaharra! Gobernuz kanpoko erakunde eta sasi demokrata nazkagarrien filosofia merkea barneratu duzu zuk ere!! Aznarren itzal luzea…!
JON.- Baina… nola esan dezakezu hori? Ni behin manifestazio batera joan nintzen, eta nire lagun sindikalista baten entxufeari esker lortu dut babes ofizialeko etxea!
PERU-TXIKI.- Imajina nezakeen, bai… badakizu? Ez dira existitzen kokainomanoak, heroinomanoak, alkoholikoak… gizaki beldurtiak baizik, konplexuz betetakoak, inbidiak jotakoak. Batzuk adorea dute hori gainditzeko, baina beste batzuk ardoari ematen diote… ligatze kontuetan ezezko bat jasotzeari aurre egiteko, esaterako. Ez da alkoholikoa existitzen, koldarra baizik.
JON.- Gizarteak baztertua dena koldarra da?
PERU-TXIKI.- Hara, gu Urrezko Zubia taldean denetik elkartzen gara, baina talde horretakoak ez gara baztertuak, tristeak baizik.
JON.- Ez dakit oso ondo ulertu dudan esan nahi duzuna. Tristeen iraultza da zuena?
PERU-TXIKI.- Batzuk tristeak direla badakite, beste batzuk ez. Batzuentzat itxaropena, besteentzat babes ofizialeko bizitzak.
JON.- *(Haserre)*. Gezurretan ari zara!!
PERU-TXIKI.- Noski gezurretan ari naizela! Hori hasieratik esan dizut!
JON.- Ez dakit zer nolako erreportajea atera daitekeen hemendik…
PERU-TXIKI.- *(Maltzurki).* Tristeen iraultza bilatzen dugula esango banizu orduan pozik geldituko zinateke? Nahi baduzu esango dizut.
JON.- Titular bat izango nuke behintzat.

PERU-TXIKI.- Niri bost. Niri jendea eskandalizatzea da gehien gustatzen zaidana.
JON.- Erreportaje bat egitea zure lanari nolabaiteko omenaldia egitea da.
PERU-TXIKI.- Nik ezin ditut omenaldiak ulertu.
JON.- Zergatik?
PERU-TXIKI.- Nik egin ditudan gauza guztiak nire beharra zelako egin ditut, besterik ez.
JON.- Zu ez zara triste bat hala?
PERU-TXIKI.- Inoiz ez naiz bizi izan orain bezain ondo eta zoriontsu.
JON.- Orduan zergatik Urrezko Zubia? Zergatik etorkinei euskarazko klaseak emate hori? Zergatik munduko jakintsurik tontoena?
PERU-TXIKI.- Nik lagunak behar ditut.
JON.- *(Dezepzionatuta)*. Hori besterik ez?
PERU-TXIKI.- Berriro esango dizut, niri izugarri gustatzen zait eskandalizatzea, izugarri. Eta hortik pertsonaia bat sortzen da, baina besteek asmatu dutena ez nik.
JON.- Ez zara existitzen orduan?
PERU-TXIKI.- Zuk erreportajea egiteko gauza jakin batzuk entzun nahi zenituen, modu jakin batean. Zuk asmatu nauzu. Idatzi nahi duzuna hortaz.
JON.- Hori ez da egia! Ni kazetari profesionala naiz, errealitatea jasotzen saiatzen naiz.
PERU-TXIKI.- A bai?
JON.- Bai.

*(PERU-TXIKI altxatzen da eta ezustean ipurditik estu hartu eta muxu bortitz eta pornografiko bat ematen dio ezpainetan, mingaina eta guzti).*

PERU-TXIKI.- Ba ea nola jasotzen duzun eroa dagoen errealitate hau!
JON.- Zergatik egin duzu hori!!??
PERU-TXIKI.- Beti gustatu zaizkit horrela bukatzen diren pelikulak.

*(PERU-TXIKI barrezka hasten da bortizki. JONek ez daki nola jokatu, libreta mahai gainera botatzen du, dardarka. Ilunera goaz).*

✩ ✩ ✩

*(Amaiera, epilogo moduan. PERU-TXIKI hasierako jarreran ikusten dugu eserita, publikoari so. Bakarrik dago oraingoan, "Munduko jakintsurik tontoena" dioen txartela alboan duela. Isilune luze samar baten ostean, hitz egiten hasten da).*

PERU-TXIKI.- Eta zuek? Zer triste klase zarete zuek? … o… ez zaretela tristeak…? … ederto, ezta ni ere. Agure bat, besterik ez naiz… elkarren antza dugu hortaz, zoragarria da gezurrak esatea!!!... *(Zutik jartzen da, bastoiaren laguntzaz)*. Gora… munduko… triste… ALAIAK!!! *(Barrez hasten da. Mahai gainetik patata hartzen du, eta aurpegira gerturatzen du)*. Eta zuk zer diozu, arratoitxo? … txita, zista, tira tira...! ta, tat, ata, titi ti ta, tataratatxita! Txit, a aata, txita, txita, aata… Kontxita! Hori da! nire ama zen Kontxita… anaiak gara hortaz…! Arraroen familiakoak…! *(Muxu ematen dio, xamurki. Ilunera goaz)*.



